# AVI-tik DVD-ra

## Etxeko reproduktorean emuletik jaitsitako pelikulak ikusi ahal izateko guida.

Hurrengo orrialdetan nik erabiltzen dudan metodoa azalduko dut. Izan daiteke azkarrena ez izatea eta emaitza onenak ez lortzea baina nik frogatu ditudan konbinazioetatik hau izan da gehien gustatu zaidana. Programen erabilera oso erraza da behin funtzionamendua ikusita.

Lehenik eta behin erabiliko ditugun programa aurkeztuko dizkizuet:

- **TMPGEnc**. Programa hau jaitsitako “segurtasunezko kopiak” dauden formatutik mpeg-era bihurtzeko erabiliko dugu, etxeko DVD-ak irakurri dezakeen formatu batera alegia. Ez du instalaziorik behar. Hainbat bertsio ezberdin daude eta interneten oso erraz aurki daiteke. Librea da, baina funtzio batzuk codec-ak behar dituzte eta hauek ez dira libreak. Gida hau egiteko, adibidez, MPEG-2 codec-a behar izan dut eta 30 eguneko bertsioa baino ez dabil. Hala ere “botikak” oso erraz lor daitezke ;).

Web orri ofiziala: http://www.tmpgenc.net/

- **TMPGEnc DVD Author**. DVD autoriak egiteko da, hau da, menuak eta kapituluak. Honek aldiz instalatzea behar du. SW da, ebaluazio denbora bat du. Aurrekoarekin bezala, botikak oso erraz aurki daitezke jeje.

Web orri ofiziala: http://www.pegasys-inc.com/

Azkenik, eta aukera bezala, grabazio programa bat erabili ahal izango dugu, hala nola Nero, EasyCD Creator, etab. Aukeran diot, DVD Author-ak badaukalako horretarako plugin-a, baina ni ez naiz fidatzen 8).

Gida ere programen arabera banatuko dugu: bihurketa, muntaketa eta grabazioa.

10 min programak bilatu eta deskargatzeko…
9…
8…
7…
6…
5…
4…
3…
2…
1…
Denbora!!!

Utziko diogu tontoarena egiteari eta hasiko gara lanean?!!! Goazen ba!!!

Lehenik eta behin dena antolatuko dugu. Hurrengo karpetak eta programak zabaldu beharko ditugu, edo gutxienez hurbil izan:

- Pelikula originalak dauden karpeta.
- Karpeta berri bat, bihurtutako pelikulak gordetzeko.
- TMPGEnc programa.

*NOTA: pelikula bakoitzak 1,5Gb okupatuko ditu bihurtu ostean (originalak 700mb dituela kontutan hartuta). Beraz, espazio librea izan beharko dugu HDan, 10GB gutxi gora behera 4 pelikula grabatzeko…*

# Pelikula originalak bihurtzen




TMPGEnc karpetara joan eta begira jotzen duen ikonoan bi klik egingo ditugu.

*NOTA: nahi adina aldiz zabal daiteke programa, 3 pelikula aldi berean kodifikatzeko adibidez, baina gero azalduko dudanez errendimendua jaitsi egiten da.*



Zabaldu eta berehala **wizard** edo laguntzailea aterako zaigu.




Zabaltzen ez bazaigu, File / **Project Wizard**en klikatuz zabal dezakegu, edota **Ctrl+W** pultsatuz.




Wizard-era bueltatuz, hiru atal nagusi bereiz ditzakegu: Video-CD, Super Video-CD eta DVD. Hauen arteko ezberdintasuna kalitatea izango da, txikiena Video-CD (oraindik aurrera VCD) izango litzateke (1150Kbps-rekin); ondoren Super Video-CD (SVCD), 1600kbps dituena; eta azkenik DVD, 4000 kbps eta gehiago izan ditzakeena.

*NOTA: kbps = kilobit per second. Segundu bakoitzak okupatu dezakeen limitea. Honi bitrate deritzo, ingeleseko bit (informatikako neurri bat) + rate (batezbestekoa). Bi bitrate mota daude CBR (constant bitrate) eta VBR (variable bitrate). Izenak dioen bezala batean bitrate-a konstantea da eta bestean aldatu egiten da eszenaren arabera. Bigarrenak, logikoa denez lan gehiago behar du eta zailagoa da bukaerako tamaina kalkulatzea, gehienbat lehena erabiltzen da.*

Nik SVCD aukeratzen dut normalean, kalitatea VHS zinta baten antzekoa da (pixka bat hobea) eta ez du asko okupatzen (1,5GB gutxi gora behera). Ondoren PAL edo NTSC aukeratu behar dugu. Hemen ez dago dudarik, PAL sistema europarra da eta NTSC amerikarra (grosso modo). Aukeratu ostean **Next**en klik egin eta…




…bideo originala aukeratzeko pantaila aterako zaigu. **Video File** eta **Audio File** aukera ditzakegu. Bideoa *.avi, *.mpeg edo antzekoren bat izan ezkero automatikoki hartuko du audioa. Bideo artxibo bat eta audio ezberdinak edukiz gero, hemen aukeratu ahal izango dugu zein erabili.

**Aspect ratio** aukerak, erlazio aspektua esan nahi du ingeleraz, altuera eta zabaleraren arteko erlazioa alegia. Automatikoki hartuko du hau ere.

Bideo originala aukeratuko dugu orain.









Edizio menua agertu zaigu. **Source range** eta **Other settings** dira garrantzitsuenak.

**Source range** ez da beharrezkoa erabiltzea, aukerakoa da. Pelikula mozteko erabil dezakegu. Oso luzea baldin bada, edo eszena zehatz batzuk baino ez baditugu nahi, aukera dugu aukeratzeko.

Zatiaren hasiera markatzeko barraren bidez puntu egokia aukeratu eta **Set start frame** sakatuko dugu.




Selekzioaren bukaera era berean aukeratuko dugu, baina **Set end frame** erabiliz.




**Ok** sakatu eta edizio menura itzuliko gara. Bertan **Other settings**ean sartuko gara zuzenean.

**Settings** konfigurazio esan nahi du, beraz hemen aukera “teknikoak” aurkituko ditugu, teknikoegiak beharbada. Guk pare bat gauzatxo baino ez ditugu aldatuko.




Lehen atalean bukaerako leihoaren **Size** (tamaina) aldatuko dugu. DVD irakurleek estandar bat dute, eta aldatuz gero ez irakurtzea gerta liteke. Aukera hori berez blokeatuta datorrenez, **Size** gainean klikatu eta **Unlock**i emango diogu. Orain arazorik gabe aldatu ahal izango dugu tamaina :D :D :D.




Erlaziorik erabiliena 352x576 da. Beraz horixe jarriko dugu.

**Bitrate**, **CRB** eta **VBR** modu ezberdinei buruz aipatutakoa ikus dezakegu hemen. Nahi izanez gero, **bitrate** igo genezake, baina honek tamaina handitzea suposatuko luke, zein proportziotan¿? ez dakigu.

Tamaina aldatzean bukaerako bideoa deformatuta ager ez dadin, erlazio aspektua mantentzea eskatuko diogu. Honela, pelikula panoramikoetan bezala agertuko da behar izanez gero: franja beltzekin.

Aukera hori bigarren atalean aurkitu dugu, **Advanced** jartzen duenean. **Video arrange Method** da aldatu behar dugun aukera, **Full screen (Keep aspect ratio)** hartuz. Ondoren **OK** klikatu eta edizio menura joango gara. Bertan berriz **Next** sakatuko dugu.







Hauxe dugu guztiaren laburpen bat. **Movie info** alboan, bukaerako pelikularen ezaugarriak ikus ditzakegu: videoa / audioa / iraupena. **Average video bitrate**en aukeratutako **bitrate**a agertzen da, azpian audioarena (ez dugu aldatu) eta azkenik espero den bukaerako tamaina. **Expert** botoia sakatuz gero, lehen egondako konfigurazio atal “teknikora” joko dugu.

Behean agertzen diren barrak eta zenbakiak CD edo DVD-aren zein portzentaia erabiliko dugun adierazten digu. Eskerrean klikatuta lista bata aterako da eta bertan guk nahi dugun formatua erabili ahal izango dugu. Berdin

dio zein aukeratu, ez da ezer aldatzen, baina nik mania diot gorriari eta DVD 4.7GB aukeratzen dut :P. Gainera normalean DVD horiek erabiltzen ditudanez, buruan ideia bat egin dezaket.

Bihurketa hasteko bukaerako bideo non gorde nahi dugun eta zein izen eman nahi diogun aukeratzea baina ez zaigu falta.




Bi aukera agertzen dira markatzeko. Lehenengoa markatuz gero, **Start enconding immediately**, **OK** sakatu eta berehala hasiko da bihurtzen. Bestela **Start** sakatu beharko dugu.



Behin bihurtzen hasita, hurrengo baloreak ikus ditzakegu:

- Whole. Pelikularen zein partetan doan agertzen duen barra bat, portzentaia duena.
- Elapsed time. Daraman denbora.
- Remaining time. Oraindik behar duen denbora.
- Source position. Pelikularen zein partetan doan; ordu, minutu eta segunduz.
- Video source. Pelikula artxibo originala.
- Audio source. Audio artxibo originala.
- Output file name. Bukaerako artxiboaren izena.

Behean konfigurazio guztia agertzen da.

Mikroprozesadorearen eta momentuan duen erabileraren arabera gehiago edo gutxiago iraungo du bihurketak. Nire ordenagailuan (P4 2GHz) ordu eta erdi edo bi ordu behar izaten ditu bideo bakoitzeko. Normalean ordenagailua bakarrik usten dut, prozesuari garrantzi handia emanez.

*NOTA: Windos XP erabiliz gero, **Administrador de tareas**en eman diezaiokegu garrantzi handia prozesuari, **Procesos** atalean programari dagokiona aukeratuz eta eskumako botoiarekin sakatuz. **Ctrl+Alt+Supr** sakatuz sar gaitezke administradorean.*

Honela DVD-an sartu nahi ditugun pelikula guztiak bihurtu beharko ditugu. Lehen aipatu dudanez, nahi izanez gero bi, hiru edota lau aldiz zabal dezakegu TMPGEnc eta bakoitzean palikula bat bihurtu. Era honetan errendimendua ez da, noski, berdina izango, baina “lan ilara” bezala erabili dezakegu.

Nik egin ditudan frogen arabera, bi aldiz zabalduta izanez gero %50 erabiltzen du bakoitzak. Baina hiru, lau edo gehiago zabaltzean batek besteek baino indar gehiago hartzen du, eta bukatuz doazen heinean berdintzen dira.

Den dena bihurtu ostean honelako zerbait izango dugu:



# Menuak antolatzen

Bueno ba, pelikula guztiak formatu egokian ditugula, menuak egiteko momentua iritsi da.

Lehen aipatu dudanez, TMPGEnc DVD Author programa erabiliko dugu horretarako.






Programa zabaltzean bi aukera nagusi ikusiko ditugu. Alde batetik behin bat eratzekoa eta bestetik proiektu bat grabatzekoa. Guk ez dugunez oraindik ezer egin, **Crate new project** aukeratuko dugu.




Goian ikus dezakegunez, menua sortzeko bigarren pausura salto egingo dugu. Pausu hau pelikulak gehitzekoa da, bertan aukeratu eta zatituko ditugu.

**Track** bakoitzaren barruan pelikula bat gehituko dugu **Add file**n bidez.



Artxiboa aukeratu eta zabaltzean errore ezberdinak ager daitezke. Garrantzitsuak direnak gorriz agertzen dira eta kontu handia izan behar da horiekin, besteak optimizaziorako baino ez dira, eta “paso egin” dezakegu.







“Erroreak” agertu ondoren, edo zuzenean errorerik egon ezean, “edizio” menua agertuko zaigu (ez da aurreko ataleko bera ;)). Bertan bideoaren ezaugarriak dauzkagu atal batean eta kapituluak sortzeko menua bestean.

Menu honetan edozein momentutan sar gaitezke menu nagusian **Edit** sakatuz.







TMPGEnc-ekin bezala, hemen ere hasiera eta bukaera marka ditzakegu eta pelikula moztu baina, horretaz gain, kapituluak automatikoki sortzeko aukera dugu. Eskumako beheko partean agertzen de **Add** botoian sakatuz gero menuan sartuko gara. Hiru modu ezberdin daude kapituluak sortzeko: puntu zehatz bat satuz, automakikoki x minuturo edo automatikoki guztira x kapitulu egonda. Nik bigarren aukera erabiltzen dut eta 10 minuturo jartzen ditut kapituluak.

Zenbakia sartu, **OK** sakatu eta kapitulu guztiak agertuko zaizkigu.







Berriz ere **OK** sakatuz, menu nagusira bueltatuko gara. **Track** bat izango dugu ezkerrean eta pelikula erdialdean. **Track**ak izen “arraroa” izango duenez, **Settings**en sartu eta izena aldatuko dugu goiko laukizuenean. **Ok**en bidez bueltatuko gara.

Prozesu bera jarraituko dugu beste pelikulak gehitzeko. **Track** berri bat sortuko dugu pelikula bakoitzeko eta nahi adina kapitulu sartuko ditugu.

Bukatzean goiko **Create Menu** sakatuko dugu hurrengo menura jotzeko.







Pausu honetan menua bera sortuko dugu. Ezkerrean menu ezberdin guztiak ikus ditzakegu. Nagusi bat dago, **Main Menu**, non **track** guztiak agertzen diren eta gero beste menu berri bat dago **track** bakoitzeko. Aldi berean, track bakoitzaren barruan orrialde ezberdinak egon daitezke, kapitulu kopuruaren arabera.

*NOTA: ez dira zertan kapitulu guztiak agertu behar, aurrerago ikusiko dugunez guk nahi ditugunak baino ez ditugu jarriko. Beraz, zatitzerakoan beldurrik gabe sor ditzakegu, nahibeste.*




Menuak agertzeko hamaika modu desberdin daude, programak berak konbinazio ugari dakartza eta gainera guk sortutako *.jpg, *.gif, *.psd eta beste hainbat formatutako argazkiak erabil ditzakegu, bai atzerako eta bai botoientzako.

Berez datozen menuak ikusteko ezkerrean agertzen den zerrendan baino ez ditugu aukeratu behar.




Ez baditugu guztiz gustuko, edo besterik gabe guk geuk egin nahi badugu menua, **Edit menu theme** sakatu eta abisu baten ostean aukera ezberdinen artetik nahi duguna hartu ahal izango dugu.






Argi eta garbi ikus dezakegu zer aukeratu behar den. Argitu beharreko gauza bakarra **Layout of the top-menu** menu nagusikoa dela eta **Layout of the track-menu** track bakoitzaren barrukoa dela da, beharbada. Aukeratu ostean **OK** eta aurrera!




Letren kolorea, forma, tamaina, etab. ez baditugu gustuko, eskumako botoiarekin aldatu nahi dugun partearen gainean sakatu eta **Edit**en bidez alda ditzakegu. Nahi dugun guztia eraldatu ostean (gogoratu menu asko daudela, ezkerrean daude guztiak XD).




Pelikula edo kapitulu bakoitzaren eskerrean agertzen diren “argazkitxoak” ere aukeratu ditzakegu, hauxe da beharbada “bitxiena”. Besteak bezala egiten da, baina. **Edit** sakatu, nahi dugun puntua aukeratu eta **OK**.




Nik letren tamaina, kolorea eta mota aldatu nituen eta “argazkitxoak” aldatu. Botoiak ere tokiz mugi daitezke, baina nik ez nituen ukitu.

Askotan ez da erraza letren kolorea atzeko argazkiarekin ondo ikustea. Photoshop edo antzeko programen bat erabiltzen jakin ezkero, errazena opakotasuna pixka bat jaistea da.




Badaukagu DVD-a ia-ia bukatuta! Lau gauzatxo baino ez zaizkigu falta :D!!!

**Display menu settings** barruan aurkituko ditugu azken ikutuak.



Lehen atalean, **display menu settings** jartzen duen tokian, DVD-an agertuko diren menuak aukera ditzakegu. Nik azkenekoa aukeratzen dut beti, dena agertzea.

Hurrengoak pelikulak bukatzean zer gertatzea nahi dugun aukeratzeko dira. **Display main menu** da nik normalean jartzen dudana, erosoena baita nire aburuz.




**Chapter display** atala, horretarako da, zein kapitulu agertuko diren aukeratzeko. Nahi ditugunak markatu eta ez ditugunak nahi kendu baino ez dugu egin behar.



Azken menua **Motion menu** dugu. Motion mugimendua adierazi nahi du, hau da pelikulen tituluen eta kapituluen alboan agertzen diren “argazkitxoak” mugitzea nahi dugun ala ez.

Goian agertzen diren aukera erabiltzen ditut nik: guztiak 10 segundoz mungitzea.

Aldaketa guzti hauek bukatzean **OK** sakatu eta menu nagusira itzuliko gara.

Bertan eskumaldean, goiko partean, **Firstplay action** aukera dezakegu, DVD sartu eta berehala gertatuko dena. Aurrekoetan bezala menu nagusia agertzea jartzen dut nik.

**Output**en sakatu eta hurrengo menura egingo dugu salto. Menu honetan ez dago aukera askorik, artxiboak non gordeko dituen baino ez. **Begin output** sakatzean, karpeta hori ez dagoela esango digu beharbada. Berak eratzea nahi badugu galdetuko digu, guk baietz esan eta kito.

*NOTA: DVD-aren artxiboak 4,7GB okupa ditzakete, kontu handiz ibili behar dugu disko gogorra ez betetzeko!!!*







Konbertsioekin bezala, gehiago edo gutxiago beharko du DVD sortzeko. Ni ikastolara joan nintzen eta lanean utzi nuen, beraz ez dakit zenbat behar izan zuen :D :D :D baina azken begirada bota nionean 60 min markatzen zituen…

Bukatzean beste mezu bat agertuko da, grabatzailea zabaltzeko aukera emango diguna. Baina hori beste atal bat da…

## DVD-a grabatzen

Artxiboak grabatzen bukatzean programak berak emango digu grabatzailea zabaltzeko aukera.




Bestela, programa zabaltzean agertzen den lehen menuan ere botoi bat dago grabaziora sartzeko.




Ez dauka aparteko zailtasunik pausu honek. 4 aukera ditugu:

- DVD bat grabatzea
- DVD-RW bat ezabatzea
- ISO artxibo bat sortzea
- ISO artxibo bat DVD batean grabatzea

**DVD folfer structure** leihatilan grabatuko diren karpetak agertzen zaizkigu. Bi izan behar dira beti: AUDIO_TS eta VIDEO_TS.

**Disc label** leihatilan diskoa ordenagailuan sartzean agertuko den izena idatz dezakegu.

Ez dakit zein punturarte da egokia programa hau. Nik **Nero** erabiltzen dut, erosoago mugitzen naizelako berarekin eta gehiago kontrolatzen baitut.

**Nero**rekin, eta beste hainbat programarekin, grabatzeko VIDEO-DVD aukeratuko dugu eta bertan agertzen zaizkigun karpetetara (Audio_ts eta Video_ts) mgituko ditugu **TMPGEnc DVD Author**ek emandako artxiboak.







Grabazioa bukatzean gure DVD-a prest izango dugu!!! Ordu batzuk (6 gutxi gora behera) sartu behar izan ditugu baina azkenean lortu dugu!!! Eta laguntzarik gabe gainera ;)

Espero dut tuto txiki honek lagundu izana. Besterik gabe, uste dut agurtzeko garaia heldu dela (ez dut nahi!!!)…

Hurrengora arte!!!

UNAI MARTINEZ
O+ .:/\:. Opositivo
17-X-2005